# LINGVAE VASCONVM PRIMItiæ per Dominum Bernardum Dechepare Rectorem ſancti michælis veteris.





¶ Aduertant Impressor, & lectores quod.z.nunquam ponitur pro.m. Neq;.t. ante.i. pronunciatur pro.c. Et vbi virgula ponitur sub.ç.hoc modo quod fit dum præponitur vocalibus.a.o.u. Tunc.c.pronunciabitur paulo asperius quam.z.vt in.ce.ci.

ERregueren aduocatu videzco eta noblea
ri virthute eta honguciez complitu yari
bere iaun eta iabe Bernard Leheteri ber
nard echeparecoac haren cerbitzari chi
piac gogo honez goraynci baque eta oſ-
ſagarri Ceren baſcoac baitira abil animos eta gentil
eta hetan içan baita eta baita ſciencia gucietan lettratu
handiric miraz nago iauna nola batere ezten aſſayatu
bere lengoage propriaren fauoretan heuſcaraz cerbait
obra eguitera eta ſcributan imeitera ceren ladin publi
ca mundu gucietara berce lengoagiac beçala hayn ſcri
batzeco hondela. Eta cauſa honegatic gueldi tzenda a-
bataturic eceyn reputacione vague eta berce nacione
oroc vſte dute ecin denſere ſcriba dayteyela lengoage
hartan nola berce oroc baitu te ſcribatzen beryan Eta
ceren oray çuc iauna noble et naturazcoac beçala bay
tuçu eſtimatzen goratzen eta ohoratzen heuſcara çu-
ri neure iaun eta iabia beçala igorten darauritzut heu
ſcarazco copblabatzu ene ignoranciaren araura egui-
nac. Ceren iauna hayec iqhuſſiric eta corregituric pla
zer duçun beçala irudi baçautzu imprimi eraci diça-
çun eta çure eſcutic oroc dugum ioya ederra Impri-
mituric heuſcara orano içan eztena eta çure hatſe ho-
netic dadin aitzinerat augmenta continua eta publica
mundu gucietara eta baſcoec bercec beçala duten be-
re lengoagian ſcribuz cerbait doctrina eta plazer har-
ceco ſolaz eguiteco cantatzeco eta denbora igaraiteco
materia eta ginendirenec gueio duten cauſa oboro ha
ren abançatzeco eta obligatu guiren guciac geyncoari

othoyz eguitera dizum mundu honeten prosperoqui
vicia eta bercian parabiçu y a, Amen.



¶ Doctrina Christiana.

Mundu yāden guiçon oroc beharluque pēsatu
Iangoycoac nola duyen batbedera formatu
Bere irudi propiara gure arima creatu
Memoriaz vorondatez endelgu yaz goarnitu.

Eceyn iaunec eztu nahi muthilgaixtoa eduqui
Ez pagatu soldataric cerbiçatu gaberic
Iangoycua ariduçu hala hala gurequi
Gloriaric ez emanen hongui eguin gaberic

Muthilec gure cerbiçutan deramate vrthia
Soldata apphur bategatic harcen pena handia
Iangoycoac beharluque guc veçanbat valia
Cerbiçatu behardugu emaytecoz gloria.

Oguiric eztacussat vilcen haci ereyn gaberic
Norc cerhaci ereyn vilcendici comunqui
Obra honac vqhenendu goalardona frangoqui
Bay etare beqhatuyac punicione segurqui.

Ceren ieyncoa egun oroz ongui ari bayçaygu
Gucere hala behardugu harçaz vnsa orhitu
Gure h atse eta fina hura dela pensatu
Goyz etarrax orhituqui haren icena laudatu.

Arraxian

Arraxian ecitian gomendadi ieyncoary
Eta othoy beguireçan perilgucietaric

Guero iraçar adinian orhit adi vertaric
Cenbaitere oracione erraytera deuotqui.

Goycian

Albadaguic ioanadi eliçara goycian
Ieyncoari han gomenda bere eche ſaynduyan
Han ſarcian penſa eçac aycinian norduyan
Norequila minço yçan han agoen artian.

Ilherrian

Hilez vnſa orhit adi ilherrian ſarçian
Hi nolaco ciradela viciciren artian
Hec veçala hil beharduc eta ez iaquin orduya
Othoy eguic ieyncoari deyen varcamenduya.

Batheyarria

Eliçara içanian ſoeguic bateyarrira
Penſa eçac handuyala recebitu fedia
Ieyncoaren gracia eta ſaluaçeco vidia
Hari eguin albaiteça lehen eçagucia.

Gorpuz ſaynduya

Vertan guero ſo albaitegui nõden gorpuz ſainduya
Penſa eçac hura dela hire ſaluaçalia
Adoreçac deuocionez eta galde gracia
Azquen finian emandiaçan recebice dignia.

Curucea

Crucifica iqhus eta orhit adi orduyan
Nola yçan redemitu haren odol ſaynduyaz
Harc eryo haritudic hiri leyan vicia
Penſa ezac nola eman hari vere ordia.

Andredona Maria

Andere honaden leqhura ailchaiçac veguiac

Mundu oro eztaquidic hura veçayn valia
Ieyncoaren hurranena hura diagoc glorian
Graciac oro vere escuyan nahi duyen orduyan.

Oandere gloriosa eta ama eztia
çutan dago beqhatoren sperança gucia
Ni çugana nyatorqueçu beqhatore handia
Arimaren saluacera çu çaquiztan valia.

Saynduyer

Saynduyer ere eguin eçac heure eçagucia
Singularqui nortan vaytuc heure deuocionia
Ceyn saynduren ve sta daten orhit egun verian
Eta noren ycenetan fundatuden eliça
Orhituqui othoy eguin daquizquian valia

Oracione igandeco

Misericordiaz bethe ciraden iaun eztia
Othoy ençun yaçadaçu neure oracionia
Biciniçan artian eta erioco phunduyan
çuc ydaçu othoy osso neure endelgamenduya
Alteratu gabetaric çure fede saynduyan
Gaucen vnsa eguiteco neure azquen finian.

Eta orduyan çuc ydaçu indar eta gratia
Beccatuyez vqheyteco vide dudan doluya
Perfectuqui eguiteco neure confessionia
Neure beqhatuyez oroz dudan varqhamenduya
Bay dignequi errecebi çure gorpuz saynduya
Bayetare vehardiren verce sagramenduyac.
Exay gayça ginen vayta tentacera orduya

Nontic engana niroyen vere arte guciaz
Othoy iauna enguztaçu lagun çure ſaynduyac
Enexayac venci enaçan neure azquen finian.

Ene arima orduyan har othoy çure glorian
Nola vaita redemitu çure odol ſaynduyaz
Eta nic handacuſſadan çure veguitartia
Eta ſaynduyequi lauda çure mageſtatia

Goyz etarraſtz eguitenduc buluz eta veztícia
Gorpuçaren cerbiçutan barazcari afaria
Arimaren ſaluaçeco ieyncoaren ohorian
Eçayala othoy neque gauça hoyen eguitia
Egun oroz ecin vada aſte oroz igandian

Gure artian haur dacuſſat ixutarçum handia
Nola dugun cerbiçacen hanbat gure exaya
Iangoycua deſconoci gure ſaluaçalia
Eta oroc eçagucen dela videgabia

Anhiz gendez miraz nago neureburuyaz lehenic
Nola gauden mũdu hunequi hayn vorthizqui ioſſiric
Hanbat gende dacuſcula hunec enganaturic
Oranocoac ygorritu oro buluzcorriric
Eta eztute guerocoec hantic eſcapaceric

Perſonoro hildenian hirur çathi eguiten
Gorpuzori vſtelcera lur hoçian egoyzten
Vnharçuna ahaidiec vertan dute particen

Arima gaixoa dabilela norat ahaldaguien
Hayn viage vortician compaynia faltacen

Orhituqui ygandian vehardugu pensatu
Cenbatetan eguin dugun aste hartan beccatu
Orhit eta ieyncoari barqhamendu escatu
Atorra nola arimere aste oroz garbitu.

Bi pundutan diagoçu gure gauça gucia
Hongui eguin vadaçagu segur parabiçuya
Beqhatutan hil dadina bertan comdenatuya
Berce videric ecin date hobenari beguira.

Ehonere eztacusat hayn laxoden arçaynic
Oxoa hencen eztuyenic bere ardietaric
Gure arimaz cargu dugu iangoycuac emanic
Nola gobernacendugun batbederac sobegui
Condu hersi vehardugu harçaz eman segurqui
Nori baitu vereodolaz carioqui erossi
Hala cinex eztaçana dauque enganaturic.

Contemplatu vehardugu passione saynduya
Eta sendi vihocian haren pena handia
Nola çagoen curucian oro çauriz bethia
Huyn escuyac içaturic eta vuluzcorria

Ohoynequi vrcaturic nola gayzquiguilia
Eta arhancez coroaturic mundu ororen iabia
Haren gorpuz precioso eta delicatuya

Gayzqui escarniaturic eta çathicatuya.

Elas orduyan nola çagoen haren arima tristia
Haren ama maytia eta mundu ororen habia
Pena hetan ecusteaz bere seme maytia
Eta hilcen veguietan mundu ororen vicia.

Viocian diraustaçu guertuz ama eztia
çure orduco doloriac eta vihoz çauriac
Beguiez nola cenacusan çure iabe handia
Orotaric laryola odol preciatuya
Hec nigatic ciradela arinuçu ghonduya.

Orhit adi nola duyan eguin anhiz beqhatu
Heyen causaz merexitu anhicetan hondatu
Bere misericordiaz nola huyen guardatu
Eta dolu vqhen vaduc vertan oro barqhatu
Eta aguian hic eguinen vertan verriz beqhatu.

Orhit adi iengoycoaren magestate handiaz
Ceruya lurra ychasoa daduçala escuyan
Saluacia damnacia eryoa eta vicia
Estendicen orotara haren potestatia
Eci escapa hari ehor dauguinian manuya.

Mundu honetan vadirogu batac bercia engana
Bana vercian eguiatic bat bedera ioanenda
Nor nolaco içan guiren orduyan aguerico da
Eguin erran pensatuyac aguerico guciac.

Orhit adi ieyncoaren iusticia handiaz
Nola oroc vehardugun eman qhondu hersia
Eguin oroz recebitu gure merexituya
Eryoa dauguinian vayta haren meçuya.

Ordu hartan afer date hari apellacia
Harc ehori eztemayo oren vaten epphia
Ecetare estimacen chipia ez handia
Bat vederac egarrico orduyan vere haxia.

Orduyan cer eguinendut gaixo beqhataria
Arartecoac faltaturen contra iuge handia
Abocacen eztaquique ehorc haren gortian
Oguen oro publicoqui aguerturen orduyan.

Elas othoy oroc eguin oray penitencia
Behar orduyan eztuquegu guero aguian aizina
Anhiz iende enganatu doa luçamenduyaz
Seguraturic ehorc eztu egun vaten vicia.

Guguirade egun oroz heryoaren azpian
Behardugu prest eduqui gure gauça gucia
Gure gaucez ordenatu osso guiren artian
Guero eztugun eguiteco heçaz azquen finian
Arimaz asqui eguiteco vaduquegu orduyan.

Pensa othoy nola gauden bi bideren erdian
Salua bano damnaçeco perileco punduyan
Ehor fida eztadila othoy vanitatian

Sayndu yac eçiraden sarthu vanitatez glorian.

Elas othoy hunat veha beqhatore gucia
Beqhatu yaz damnacendu iangoycuac munduya
Ceren hanbat veccatutan deramagu vicia
Eta guhaurc gure faltaz galcen gureburu ya.

Arzayn oroc vilcenditu ardiac arraxaldian
Leqhu honerat eramayten eguraldi gaycian
Bat bederac pensa veça arimaren gaynian
Nola saluaturen duen hura vere finian.

Beqhatorec yfernuyan dute pena handia
Pena handi ycigarri eceyn pausu gabia
Seculacoz egon vehar hango sugar vician
çuhur denac hara eztohen eguin penitencia.

Harmac eryoaren contra

Eryoa iauguitenda guti vste denian
Eta aguian ez emanen confessione epphia
Hirur gauça albaditu ehorc ere eguiaz
Nola ere hil vaytadi doha saluamenduyan.

Lehen eguia

O iaun hona aytor cendut beqhatore niçala
Eta gaizqui eguitiaz oguen handi dudala
Nic vaycitut offensatu bide eztudan veçala
Dolu dicit eta damu çure contra eguinaz.

Bigarren eguia

Oiaun hona gogo dicit oren present honetan
Goardaceco beqhaturic vici niçan artian

Othoy iauna çuc ydaçu indar eta gracia
Gogo honetan yrauteco neure vici gucian.

Heren eguia

Oiaun hona gogo dicit gariçuma denian
Eguiazqui eguiteco neure confessionia
Vay etare compliceco didan penitencia
Othoy iauna çuc confirma ene vorondatia.

Eta hoyec eguiazqui ehorc hala ezpaditu
Albayliaqui duda gabe ecin dateyela salbu
Bere beqhatu yac oro vaditu ere confessatu
Eta hala çinhex beça nahi eztenac enganatu.

Apezeq ez apezpicuq ez etare aytasaynduc
Absoluacen halacoaren eceyn bothereric eztu
Iangoycua bethiere vihocera sodiagoçu
Guhaurc vano segurago gure gogua diacuxu
Gogua gabe hura vaytan hiçac oro afertuçu.

Regla eçac egun oroz onsa heure etchia
Eure gauça gucietan emac diligencia
Eta eure trabayluya duyan penitencia
Iangoycua lauda eçac gauça ororen buruyan.

Honequila albayteça bethiere conuersa
Gaixtœqui ecin ayte gayzqui beci prouecha
Bercer eguin eztaçala nahi eçuqueyena
Ez etare falta ere hiaurc nahi duyana
Legue honi segui vedi salbu nahiduyena.

¶Hamar manamenduyac:

ADoreçac iãgoycobat onhestz oroz gaỹnetic
Haren ycena ez iura causa gabe vanoqui
Ygandiac eta vestac sanctifica deuotqui
Ayta eta ama ohoraiçac vici yçan lucequi
Ehor erho eztaçala ez etare gaycetsi
Norc veria vayecila emazteric ez hunqui
Vercerena eztaçala ebaxi ez eduqui
Fama gayciq eztemala lagunari falsuqui
Bercen emazte alabac ez desira gayxtoqui
Eçetare vnhasuna lecotbedi iustoqui.

Manamenduyac hoyec dira iangoycuac emanic
Hoc veguira diçagula salua guiten hegatic.

¶Iudicio generala

Iudicio generalaz nola orhit eztira
Beccatutan vici dira bethi vere aysira
Egun hartan gal ezquiten aycinetic veguira
Han orduyan eztuquegu ehorc ere ayzina
Harçan vnsa orhitcia çuhurcia handida.

Arma arma mundu oro iudicio handira
Ceru eta lur ororen creadore handia
Munduyaren iuyacera rigorosqui helduda
Nola gauden apphaynduric bat bederac beguira.

Manamendu ygortendu mundugucietaric
Gende oro bat daquion iosafaten vilduric
Ehonere ehorere escapatu gaberic.

Ceru eta lur gucia daude yqharaturic.

Eryoa manacendu eceyn falta gaberic
Hilac oro dacacela aycinera viciric
Hantic harat eztuquela votħereric iagoytic
Mundu oro iarrirenda bi lecutan hersiric
Glorian ezpa yfernuyan ezta escapaceric.

Manacendu yfernuya andi eta vortizqui
Handirenac ygoriçan luçamendu gaberic
Arima eta gorpucetan nahi tuyela icussi
Eta emanen darayela cer vaytute mereci.

Gende honac onsa pensa iuge hunen gaynian
Nola duyen gucietan potestate handia
Eryoan yfernuyan ceru eta lurrian
Ceren dabil haren contra vada veqhatoria.

Gure artian haur dacussat ixutarçun handia
Nola dugun cerbiçacen hanbat gure exaya
Iangoycoa desconoci gure saluaçalia
Eta oroc eçaguçen dela vide gabia.

Harren bier emanendu sentencia piçuya
Elgarrequi pena diten ifernuco garrian
Seculaco suyan eta eceyn pausu gabian
Oroc othoy onsa pensa cerden yrabacia.

Egundano ezta içan ez içanen iagoytic

Iudicio hayn handiric ez etare vorthizich
Sortu eta ſorcecoac hilez guero pizturic
Oroc hara vehar dute eſcuſatu gaberic.

Anhiz gauça vehardira iudicio handian
Iugeac du yen poteſtate parte ororen gaynian
Demandantac erran deçan vere cauſa eguiaz
Bayetare defendentac bere defenſionia
Porogatu datenian norc duqueyen çucena
Sentenciaz eman deçan iugiac nori veria.

Egun hartan iuge date mundu ororen iabia
Baytu ororen gaynian poteſtate handia
Acuſari vera date eta conciencia
Beqhatu oro publicoqui aguerico orduyan

Beqhatoren contra date orduyan mundu gucia
Cerenduten ofenditu hayen creaçalia
Ordu hartan ixildauque triſte veqhatoria
Orotaric cerraturic daude pauſſu guciac.

Iuge iauna iraturic egonenda gaynetic
Yreſtera apphaynduric yfernu ya azpitic
Exay gayça acuſacen ezquerreco aldetic
Beccatu yac eſcu ynetic minçaturen publiqui
Hire contra heben guituc ihaurorrec eguinic
Gayzquienic contra date conciença varnetic.

Eſtalceco ez içanen ehonere leqhuric

Aguercera norc eguinen ordu hartan vathiric
Mundu oro egonenda hayen contra Iarriric
Sayndu ac ere ordu hartan oro egonen ixilic
Iugeac ere ez ençunen ezeynere othoyc
Egun harçaz orhit guiten othoy hara gaberic.

Nondirate egun hartan hebengo iaun erreguiac
Duque conde marques çaldun eta verce iaun nobliac
Eta hayen armadaco guiçon ſendoen valentiac
ordu hartan valiaco guti hayen potenciac.

Iuriſta eta theologo pœta eta doctoriac
Procurador aduocatu iuge eta notariac
Ordu hartan aguerico clarqui hayen maliciac
Eta guti valiaco cautela eta parleriac..

Ayta ſayndu cardenale apphez eta prelatuyac
Berez eta ardi oroz eman vehar han conduya
Egun hartan handiena yçanenda erratuya
Eta vardin iuyaturen handia eta chipia.

Aferdate egun hartan hari apellacia
Ehonere eztaçagu iaunic vere gaynian
Malicia gayci çayca eta mayte eguia
Elas othoy oroc eguin oray penitencia
Egun hartan guero eztugun eguiteco handia.

Seyn aliac ginendira aicinetic triſteric
Element ac ebiliren oro tribulaturic

Iguzquia ilharguia odoletan ecinic
Ychasoa samurturic goyti eta veheyti
Hango arraynac icituric ebiliren ialguiric.

Eta lurra icigarri oro iqharaturic
çuhamu yec dacartela odolezco ycerdi
Tenpestatez igorciriz ayre oro samurric
Mendi eta harri oro elgar çaticaturic
Mundu oro iarrirenda su yac arrasaturic.

Iuge iaunac manaturen vera iauguin gaberic
Gauça oro xahu deçan vehin su yac lehenic
Saxu eta quirax oro dohen mundu gucitic
Eta hala iarrirenda lurgucia erreric.

Trompetada minçaturen mundugucietaric
Hilac oro iayqui huna çuyen hobietaric
Arima eta gorpucetan oro vertan pizturic
Oroc hara vehar dugu escusatu gaberic.

Iustu oro yganenda hertan goyti ayrian
Eta egonen escoynetic iugearen aldean
Beccatoreac dolorezqui sugarrian lurrian
Hariqueta dançuteno sentencia gaynian.

Dagœnian gende oro aicinian vilduric
Iauguinenda rigorosqui saynduyequi cerutic
Iosafaten egonenda airian gora iarriric
Beccatorer eguinendu arrangura handiric

Haren hiçac eçarriren oro erdiraturic.

Hartu nahiçu yenian paſſione ſayndua
Haren contra gincenian armaturic gendia
Hiz huxbatez icituric egocitu lurrian
Iuyacera dauguinian mageſtate handian
Nola eztu loxaturen ordu hartan munduya.

Erranendu beccatorer dolorezqui orduyan
Niçaz ecineten orhit bicicinetenian
Hanbat ongui nic eguinic çuyer çuyen mendian
Eſquer honbat vqhen eztut çuyeganic vician.

Cerere hon vaytuçuye oro dira eniac
Gorpuz eta hon guciac baietare arimac
çuyendaco eguin ditut lurra eta çeruyac
Yguzquia ilharguia eta fructu guciac.

Suyac vero hurac xahu hax harceco ayria
Aynguruyac çuyen goarda ararteco ſaynduyac
çuyegatic eçarridut guero neure vicia
Hoyegatic orogatic cerda çuyen paguya.

Icuſſiric anhicetan beharrian pobria
Eri goſſe egarria eta buluzcorria
Ene ycenian anhicetan galdeguinic limoſna
çuyec vqhen baytuçuye heçaz guti anſia.

Bay erhoqui conplacitu ene contra exaya

Demonio haraguia bayetare munduya
Oray dela çuyen daco maradicionia
Ifernuco suya eta iagoytico nequia
Eta çuyen conpaynia demonio gucia.

Ezta anhiz luçaturen execucionia
Bertan date yrequiren lurra oren verian
Su harequi irexiren oro vere varnian
Haur yçanen veccatoren vndar yrabacia.

Elas nola yçanenden heben damu handia
Damu handi içigarri remedio gabia
Hanbat iende seculacoz damnaturen denian
O iaun huna çuc guiçaçu othoy hantic veguira.

Veretara içuliren ditu guero veguiac
Goacen oro elgarrequi ene adisquidiac
Bethi eta seculacoz gauden ene glorian
Desir oro conplituric alegria handian.

Hantic harat ezta içanen bi erretatu bayeci
Damnatu yac ifernuyan bethi dolorerequi
Saluatu yac ieyncoarequi bethi aleguerаqui
Iangoycuac daguiela gure partia hoyequi.

Ceruya ezta ebiliren hantic harat iagoytic
Yguzquia egonenda orienten gueldiric
Ilharguia occiden ten beguiz begui iarriric
Egun honec yraunendu eben eta iagoytic

Alabana ez içanen heben gauça viciric.

O iaun hona çucirade gure creaçalia
Beccatore baguirere oro guira çuriac
Gure faltaz gal eztadin othoy çure eguina
Beccaturic garbizaçu othoy gure arimac.

Baldin erideyten vada gutan falta handia
Are duçu handiago çutan pietatia
çuretaric guiren othoy eguiguçu gracia
çurę ama anderia daquigula valia.

Oracionia

AVe maria anderia gracia oroz bethia
Ieyncoaren ama virgen veracordenatuya
Ceru eta lur ororen erreguina dignia
Beqhatoren aduocata eta confortaria.

Ni çugana niatorqueçu beccatore handia
Carioqui othoy cera çuçaquiztan valia
Digne ezpaniz aypacera çure ycen ſaynduya
Ez gitera aycinera ceren bayniz ſaxuya.

Miſericordiaz bethe ciren andere handia
Enaçaçula othoy yrayz eta ez menoſprecia
çuc guibela badidaçu elas ama eztia
Ordu hartan diacuſaçut galdu neure buruya.

Hanbat nuçu gauça orotan ni verthute gabia
Oren oroz beccatutan nabilena galduya

Eta bethi erratyua nola ardi yxuya
Mundu hunec haraguiac bethi enganatuya.

çu baicira gracia ororen ama eta yturburuya
Verthute eta hon gucien thesorera handia
Egundano beccatutan maculatu gabia
Verthutetan seguiçeco eguidaçu gracia.

çutan dago beccatoren remedio gucia
Sperança ossagarri eta saluamenduya
çuc guibela demaçuna nola vayta galduya
çure gomenduyan dena hala verda salbuya.

Ieyncoac çuri emandici potestate handia
Haren ama ciren guero ama ere maytia
Ceru eta lur orotan duçun hanbat valia
Cer çuc galde baytaguiçu den conplitu gucia.

Eta çure escutic duten verce oroc gracia
Eta salua çuc deçaçun çuri gomendatuya
O andere excelente eceyn pare gabia
Saluatu yetaric niçan eguidaçu gracia.

çuri gomendacen nuçu hila eta vicia
Neure gorpuz eta arima eta dudan gucia
Othoy vehar orduyetan çuçaquiçat valia
Eta othoy çuc goberna ene vici gucia.

Eta yrabaz ieyncoaganic indar eta gracia

Beccatuyez eguiteco vnsa penitencia
Eta guero verthutetan deramadan vicia
Eta eguin gauça orotan haren vorondatia.

Beguira othoy mescabutic ene gorpuz pobria
Beccatutan hil eznadin eguidaçu gracia
Seculacos damnaturic enoyan galduya
Bana çure escutic dudan saluaceco vidia.

Eta guero dauguinian ene eryocia
Arimaren particeco oren ycigarria
Ordu hartan behar baytut eman condu hersia
Eguin oroz recebitu neure merexituya.

Eta ez iaquin lehen gaoyan nondaten ostatuya
Ez etare çu ezpacira nordaquidan valia
Ordu hartan helçaquiçat othoy ama eztia
Ararteco leyal eta neure ayutaria.

Othoy çure gomenduyan har arima tristia
Ordu hartan io ezteçan yfernuco vidia
çure seme iaunarequi eguidaçu baquia
Beccatuyac barqhaturic didan parabiçuya.

Eta nic handacusadan çure veguitartia
Eta sayndu yequi lauda haren magestatia
çeren vnsa orhit citen niçaz ama eztia
Gogo honez erranendut çuri aue maria.

Oracione haur derrana andredona maria
Othoy gomendatu duçun hila eta vicia.

¶ Amorosen gaztiguya

Bercec berceric gogoan eta nic andredona maria
Andre hona daquigula gucior othoy valia.

Amorosac nahi nuque honat veha valite
Honliçaten gaztiguric aguian enzun liroyte
Amorebat hautaceco conseylubat nequeye
Balinetan seculacoz gogoan sar valequie.

Ni haurc ere vqhen dicit ceynbaytere amore
Bana hantic eztut vqhen prouechuric batere
Anhiz pena arima gal hanera eta neuryere
Amoretan plazer baten mila dira dolore.

Amoretan othedate leyaldenic batere
Hiz ederrez ezpa ioyaz mutha eztadin huraere
Hoben vste duyenori anhicetan traydore
Hobena date gayzenic arimaren berere

Beqhatuzco amoria bethi date traydore
Erioa dauguinian eguia çogueridate
Hartuduten plazer oro orduyan yragandate
Beccatuya gueldicenda penaçeco guero ere
Anhiz plazer vqhen badu anhiz vehardolore.

Amorebat nahi nuque liadutanic eguia
Vici eta hilez guero hayn laquidan valia
Cerbiçatu nahi nuque halacoa vician
Heben labur viciada iagoyticoz bercia.

Mundu oro iraganic ez eriden berceric
Ieyncoaren ama hona gracia oroz betheric
Haren amore içateco ezta ehor digneric
Vnsa cerbiça daçagun mayte guitu bertaric.

Amoriac vano dira harçaz berceguciac
Behar handiendenian faltaturen berciac
Vste bano lehenguira hilcen beqhatoriac
Harc ayuta ezpaguiça nola guiren galduyac.

Andre hona hardaçagun oroc gure amore
Berce oro vci eta eguin hari ohore
Hala eguin vadaçagu ohoratu guirate
Berce gatic hura gabe oro galdu guirade.

Ieyncoaz landan mundu oroc eztu hanbat valia
Ceru ya lurra ychassoa haren peco gucia
Oro tara hedacendu vehar vada escu ya
Bera handi içan arren preciacen chipia
Halacoa vci eta nonduquegu bercia.

Berce amoreac baten veci eztirade perestu
Norc beria berciari eztu nahi partitu
Ama virgen gloriosa hanbat vada conplitu

Ororençat bera bayta leyaldela abastu.

Amorosec badaguite vehin bere nahia
Handiago gitençaye berce nahicaria
Eci vqhen behinere bere conplimenduya
Bethi peytu deramate bere mende gucia
Emazte eta guiçonoroc har amore maria
Eta orori vaytequegu berac conplimenduya.

Andre honac vqhen dici ederretan gracia
Ehorc hura gayxteriaz ecin leçan inbia
Bana vistaz hilcençuyen nahicari saxuya
Figuraren eqhustiaz daquiqueçu eguia.

Ychassoan hur gucia ceruyetan içarra
Oyhanetan içalori lurgucian velharra
Egunari yguzquia gau belçari ilhuna
Lehen faltaturen dira eci hura gugana
Balinetan eguiazqui gubagaude hargana.

Ceren bada erho guira gayxo beqhatariac
Andre leyal honegana goacen othoy guciac
Elas othoy aribira berce amore falsuyac
Harequila segur dugu vehar dugun gucia.

Elas amoros gaixoa hire enganatuya
Erhogoatan badaramac eure mende gucia
Ene andere graciosa ezpadaquic valia
Bay bician bay hilian bethi oha galduya.

Dembora duyan artian eguic ahal honguia
Eryoa dauguinian miraz duquec orduya
Orduyan ere nahi vaduc onsa ialguid aguia
Onsa hari gomendadi nic diossat eguia
Finianere eztic vzten harc galcera veria
Orduyan ere vere escuyan dic gracia gucia.

Mundu honec anhiz gende enganatu darama
Iagoyticoz vici vstez haren sehi dabilça
Guti vste duyenian ehor vci darama
Erho ioqhatuyadate hartan fida dadina.

Ni haur ere ebiliniz anhicetan erhoric
Gaoaz eta egunaz ere hoçic eta veroric
Loa galdu pena asqui bana ez arimagatic
Oray oro nahi nuque liren ieyncoagatic.

Ni beçala anhiz duçu halacoric munduyan
Mende oro dohatenic bethi vana glorian
Ohart guiten buruyari denboraden artian
Andre honac harguiçaque gomendutan aguian
Hanbat bada graciosa ama ororen gaynian
Gindadinic eztu vzten hartu gabe gracian

Culpa gabe ehor ezta haurda segur eguia
Beqhatuyaz damnacendu iangoycoac munduya
Beqhaturic ez ta yçan çutan andre handia
Ararteco çaquizcula digun varqhamenduya.

Beccatoren salüaceco ieyncoac eguin cinducen
Bere buruya eguin dici iuge iusticiaren
çu misericordiaren refugio cinaden
Nola berac iustician ecin salualiçaque
çure misericordiaz remedia litecen
Balinetan eguiazqui çugana gin valite.

Egundano ezta yçan ez içanen iagoytic
Beqhatore hayn andiric ez etare saxuric
Berebidian iauguin vada çuri gomendaturic
Vqhen eztuyen barqhamendu çure amorecatic
Ez galduda ez galduren çure gomenducoric
çuri gomendacen guira hilic eta viciric.

Berce emaztiac ama dira cenbayt haurto chipiren
Eta guero obororic puncela ecin dirate
çu anderia ama cira virginaric ieyncoaren
Eta gueroz erreguina ceru eta lurraren.

Ieyncoa iaunden gauça ororen çu cirade andere
Arrazoynda mundu oroc daguien çuri ohore
Eci hala ariçaucu Ihesu christo vera ere
çuc beçanbat dignitate mundu oroc eztuque.

O anderia ecin date ehor çure vardinic
Gaynecoric çuc eztuçu ieynco veraz berceric
Ieynco ezten verce oro dago çure azpitic
Ieyncoaren ama cira mundu oroz gaynetic.

Mundu oroc eztu eguin çuc beçanbat hargatic
Orogatic bano oboro harc ere daydi çugatic
Bere ama ecin vci obeditu gaberic
Othoy gracia eguiguçu guiren çu yenetaric.

Vnsa çuc harbanençaçu gomendutan gogotic
Ecin damna naynde yela cinestendut segurqui
Anhiz veguiratu duçu galduren cenetaric
Niri ere hel çaquiçat othoy galdu gaberic.

Ehonere gayzic ezta çuc qhen eztiroçunic
Ez etare hontassunic çure escu yan eztenic
Denbora eta leqhu orotan ecyn duda gaberic
Graciac oro çure escu yan iangoycoac emanic.

Nahi du yena hala duque amac semiaganic
Seme honac anhiz daydi amaren amorecatic
Gure natura haritudu çutan amoraturic
Iangoycoa ezarri duçu gure anayeturic.

Haren eta gure ororen ama cira digneric
Amac eztu sofriceco semen artian guerlaric
Samurturic badacuxu gure gaizqui egatic
Ororen ama cira eta baqueguiçaçu bertaric.

Oray eguiten diraden gayzqui handiegatic
Ieyncoac ondatu çuqueyen lur gucia engoytic
Balinetan çu ezpacina ararteco gugatic
Oro sostengacen guitu çure othoy egatic

Gu gayxtoac içan arren ezten çutan faltaric
Fin honera helguiçaçu guiren salbuyetaric.

Ama eztia nic badaguit çure contra faltaric
çuc gaztiga eta dreça naçaçu othoy bertaric
Elas norat ihes naydi çu neure ama vciric
Neuretaco eztaçagut çu nolaco amaric.

¶Emazten fauore:

Emaztiac ez gayz erran ene amorecatic
Guiçonec vci valiçate elaydite faltaric.

Anhiz guiçon ari bada andrez gayzqui errayten
Arhizqui eta desonesqui baytituzte aypacen
Yxilica egoytia eder rago liçate
Andrec guiçonequi beci huxic ecin daydite.

çuhur gutic andre gatic gayzqui erran diroytē
Hayez hongui erraytea onestago liçate
Emazteac cerengatic gaiz erranendirate
Handi eta chipi oro hayetaric guirade.

Balentia sinpleada andren gayz èrraytea
Bat gayz erran nahi vadu oro vardin sarcea
Yxil ladin nahi nuque halacoden gucia
Damugaycic emazteac hari eman dithia

Andren gayz errayle oroc bearluque pensatu

Bera eta verce oro nontic guinaden sorthu
Ama emazte luyen ala ez nahi nuque galdatu
Amagatic andre oro beharluque goratu

Guiçonaren prouechuco emaztia bethi da
Oro behin hayetaric sorcen guira mundura
Sorthu eta hilguinate harc haz ezpaguiniça
Haciz guero egun oroz behar haren ayuta.

Haren escuz ossoan behar soynera eta iatera
Eridenian andre gabe galdu guiçon egurra
Hil badadi hura nola nordoaque gaynera
Ordu oroz behartugu ezta heben cerduda

Emazteric ezten lecuyan eztacusat plazeric
Ez guiçona ez echia behinere xahuric
Echianden gauça oro gayzqui erreglaturic
Parabiçuyan nahi enuque emazteric ezpaliz.

Emaztiac eztut ençun lehen guiçona iauquiric
Bana guiçonac emaztia bethiere lehenic
Gayxteria ialguitenda bethi guiçonetaric
Ceren bada daraucate emaztiari hoguenic.

Bertuteac veharluque guiçonetan handiago
Emaztetan nic dacussat honguiz ere guehiago
Mila guiçon gazxtoric da emaztebatendaco
Guiçon baten mila andre bere fedean dago.

Hec guiçoner veha valite eliçate bat honic
Eztiro vte deuſcaydenic vci iauqui gaberic
Bana anhiz emazteda eſcapacen çayenic
Anderetan ceren bayta vertutea hobenic.

Nic eztançut emaztiac borchaturic guiçona
Bana vera çoratutic andriari darrayca
Cenbayt andre hel baledi oneriztez hargana
Ceyn guiçonec andriari emaytendu oguena.

Ieyncoac emaztea mayte mundu oroz gaynetic
Cerutica iayxicedin harçaz amoraturic
Emaztiac eçarridu gure anayeturic
Andre oro laudaceco haren amorecatic.

Irudiçayt emaztia dela gauça eztia
Donario gucietan guciz gauça emya
Gaoaz eta egunaz ere badu plazer handia
Harçaz gayzqui erraytia vilania handia.

Munduyan ezta gauçaric hayn eder ez placentic
Nola emaztia guiçonaren petic buluzcorriric
Beſſo viac çabalduric dago errendaturic
Guiçonorrec daguiela harçaz nahiduyenic.

Iobadeça dardoaz ere gorpuzaren erditic
Ayngu ruyac bano oboro ezlarraque gayzquiric
Bana dardoa ematuric çauriere ſendoturic
Bere graciaz ezarteyntu elgarrequi vaqueturic.

Norda guiçon modorroa harçaz orhit eztena
Eta guero halacoa gayzerrayten duyena
Ezta guiçon naturazco hala eguiten duyena
Ceren eztu eçagucen hala hongui eguina.

## ¶ Ezconduyen coplac

Iangoycoa edetaçu vercerena gogotic
Bera captiuada eta ni gathibu hargatic.

Ni gathibu naducana captiuada bercereu
Ene dichac hala eguindu ny gathibu bigaren
Gogo honez içaneniz vicy baniz bataren
Bana borchaz bayecila ez iagoytic verciaren.

Bercerena hardaçanac beretaco amore
Oborotan vqhenendu plazer bano dolore
Baçarriac veqhan eta veldur requi dirate
Guti vſte dutenian gayça bertan ſordayte.

Honeſtea bercerena erhogoa handida
Plazer vaten vqhenendu anhiz malenconia
Beguyez icus ecin minça handacuſat nequia
Beryarequi daçanian enetaco aycia.

Perilequi bayecila ecin noaque hargana
Eta aguian harc ordu yan ezpaytuque aycina
Baduere veldur date vertan doha harçara
Nic nahyen dudanian bercech beſſoan daraça.

Alhor hartan helbadaquit ereytèra hacia
Eta ene vada ere laſtoa eta vihia
Ez bat ori ahalduquet ezetare vercia
Lan eguinaz eſquer gayxto galdu yrabacia
Bercerenzat gueldicenda ene çucenbidia
Aguyan guero alabarequi ezconduco ſemya.

Amoria ehorc ere eztu nahi partitu
Nic eztaquit berciac vana ny aryniz beqhatu
Beriarequi eqhuſtiaz hayn hayn noha penatu
Hec doſtetan ni nequetan orduyan errabiatu

Geloſiac eztiçaquet nic gayz erran ſeculan
Mayte nuyena nahi enuque ehorc hunquiliaçadan
Bercerenaz yçanuçu amoros leqhu batetan
Beriagana geloſturic deſeſperacer ninzan

Amoria ecyn cençuz ecin dayte goberna
Anhicetan honeſtendu guti vehar duyena
Arnoac vano gayzqui ago ordidiro perſona
Sarri eſtaca berant lacha harc hazeman deçana

Amoria ixuda eta eztaçagu çucena
Eztu vſte berceric dela lecot mayte duyena
Suyac vano gayzquiago erradiro guiçona
Ychaſſoac ez yraungui erachequi dadina.

¶Amoros ſecretuguidena

Andre eder gentilbatec vihoça der aut ebaxi
Harçaz orhit nadinian deusere ecin y rexi
Nic hura nola nahi nuque harc banença onhexi
Ecin venturatuz nago beldur daquion gayci.

Miraylbat nic ahalbanu hala luyen donoa
Neure gogoa neracuxon secretuqui han varna
Han veryan nic nacussen harena ere nigana
Huxic ecin eguin neçan behinere hargana.

Ene gayzqui penaceco hayn ederric sortucen
Gaoaz eta egunaz ere gayzqui nici penacen
Harequila bat banadi vihoçazayt harricen
Neure penen erraytera are eniz ausarcen.

Enegogoa balyaqui mayte vide nynduque
Nierregue valinbaninz erreguina liçate
Hura hala nahi valiz elgarrequi guinate
Haren haurrac eta eniac aurride osso lirate.

Valinetan nic vanerro hari neure vihoça
Eta guero valinbalit respuesta bortiça
Dardoac vano lehen liro erdira ene vihoça
Duda gabe eror nayn de han berian hilhoça

Artiçarrac bercetaric abantailla darama
Hala verda anderetan ni penacen nu yena
Hanbat da eder eta gentil harçaz erho narama
çori honian sortu date haren bessoan daçana.

Ene gogoa nola vayta çucen iarri hargana
Harenere iangoycoac dacarrela nygana
Ene pena ſardaquion vihocian varrena
Gogo hunez eguin daçan deſiracen dudana

## ¶ Amoroſen partizia

Parti albanenguidio harc ezluque pareric
Ala vana nic ezticit hayn honderiçadanic.

Amorebat onhexidut guciz ſoberatuqui
Ene arima eta vihoça ioſſidira harequi
Haren yrudi ederrori veguietan ehoqui
Harçaz orhit nadinian vihoza doat ebaqui.

Nic hargana hanbat dicit amoryo handia
Harequila egoytiaz ezpaneynde enoya
Harganico particia ene eyhar garria
Berriz icus dirodano bethi malenconia.

Elas ene amoria nola nuçun penacen
çurequila ecin vathuz vihocian erracen
Ene gaizqui penaceco ſegur ſorthu cinaden
Penac oro honlirate çu bacina orhicen.

Minzaceco çurequila gaubat nahi niqueci
Hilabete conplituric hura luça valedi
Arranguren qhondaceco aſti nuyen frangoqui
Eceynere veldurgabe egoyteco çurequi.

Oray porogacen dicit daquitenen errana
Ehorc vci eztaçala escuyetan duyena
Elas yzul albaneça yraganden denbora
Segur oray enyqueci dudan gogoan veharra

Denbora hartan ohinicin nic çugatic dolore
Oray aldiz çure faltaz muthatuniz ny ere
Malenconya ecitela vaduqheçu amore
Bana ordu vacinduque cençaceco çuc ere.

Badaquiçu doloryan partaydenyz ny ere
Eta çure muthaceco ez oguenic batere
Neure gayzqui penaceco harcinçadan amore
Iagoyticoz vqhenendut nic çugatic dolore.

¶ Amoros gelosia

Beti penaz yçatia gayzda ene amore
Beti ere veharduta nic çugatic dolore.

Amorebat vqhendicit miragarri gentilic
Harequila ninçanian enuyen nic faltaric
Nic iagoytic ecyn nuque hura veçayn mayteric
Haren minez oray nago ecin hilez viciric.

Norc baytere amoria niri daraut muthatu
Nic eztaquit cerden vana estamendu verridu
Ohi nola aspaldian nahi eçayt minçatu
Cerq andere han tuduyen vehardicit galdatu.

Secretuqui vehardicit harequila minçatu
Ordu hartan iagoyticoz'exay ezpa vaquetu
Nyri vnsa ezpadaguit vehardicit pintatu
Ene buruya ciaydaçu harendaco abastu.

Amoria nor yçanda gure bion artian
Muthaturic vaçabilça ia aspaldi handian
Nic çugana daquidala faltatu eztut vician
Bioc behin secretuqui nonbait mynça guitian.

Ehonere eztacussat nihaur veçayn erhoric
Nic norgatic pena vaytut harc ene eztu axolic
çuhur banynz banynçande ny ere hura gaberic
Alabana ecin vci vehin ere gogotic.

Gende honac vihoça daut bethiere nygarrez
Neure amore chotiltua galdu dudan veldurrez
Gaoaz loric ecin daydit haren gogoan veharrez
Gogoan vehar handidicit bethe nnyen adarrez.

Iangoycoa edetaçu amoria gogotic
Eta haren yrudia ene veguietaric
Harc nigana eztaduca vnsa leyaldateric
Ni ere elicaturenyz oray hura gaberic
Saroyada lohitu eta eztut haren veharric
Nahi badut vqhenendut oray ere berriric.

¶Potaren galdacia

Andria ieyncoac drugaçula oray verdi guirade
Ny erregue balinbanynz erreguina cinate
Potbat othoy eguidaçu ezayçula herabe
Nic çugatic dudan penec hura merexidute.

Eya horrat apartadi nor vsteduc niçala
Horlacobat eztuc vste nyc icussi dudala
Horrelaco hiz gaixtoric niry eztarradala
Vercer erran albaytiça enuc vste duyana

Andre gaixtoa bacinade nic eznaydi conduric
Ciren cirena baycira çuçaz penadicit nic
Ene vstian eztut erran desonestaden gauçaric
Potbat niri eguinagatic ecinduque laydoric,

Hire potac bacyaquyat berce gauça nahidic
Anderia azticira nihaurc erran gaberic
Bada vci albaynençac ny holacoz yxilic
Horreyn gayz ciraden guero eguinendut verceric.

Viciny çan egunetan vada ecitut vciren
Nic cer oray nahi vaytut heben duçu eguinen
Vstediat escuy arqui eciçala burlacen
Guiçon hunec oray nuya heben laydoz veteren
Ey agora nyc cer daydit çauden yxilic hanbaten.

Etay lelo rybay lelo pota franco vercia vego
Andria minça albaycinde verce aldian emiago.

¶Amorez errequericia

BEnedica fortuna ala encontru hona
Oray beguietan dicit desiracen nuyena.

Ene mayte maytena eguidaçu çucena
Ioanduçuna eqhardaçu ezpa eman ordayna

Nic daquidan gauçaric eztaducat çureric
Loxaturic iarri nuçu ezpaytaquit cegatic.

Eztuçula veldurric eztuqueçu perylic
Gure aucian ezta yçanen çu haurbeci iuyeric.

Eztut eguyn gayzquiric vqheyteco perilic
Ez etare ceren gatic vehar dudan auciric.

Vada neure maytia nic dioxut eguia
Arrobatu nuçu eta valia vequit neurya.

Ny enuçu ohoyna arrobaçer nyçana.
Oray othoy en adila oguen gabe difama.

Enetaco ohoyn cira ohoyn ere handicira
Nic veharren nuyen gauça daramaçu çurequila.

Ni enuçu iaquinxu clarqui erran eçaçu
Ehorc vnsa adi ciçan nahi valin baduçu.

Guiçonac duyen maytena bay etare hobena
Vihoceco pausuya du eta vere lo huna.

Oray loric ecin daydit vihocian ezpausuric
Hayec biac galdu ditut amoria nic çugatic.

Vnsa pensa vadeçaçu gayzqui arrobatunuçu
çor handian çaude eta othoy vnsa eguydaçu.

Galdu valin badituçu ceren oguen derautaçu
Nic daquidan leqhutaric ni baytara eztituçu.

Oray egun vatetan cenaudela pensetan
Hanbat çuçaz amoratu gueroz nuçu penatan.

Horla erraytia errax duçu erho bocen vadaquiçu
çura pena dioçunoc nonbayt handi videytuçu.

Hanbatere handi tuçu ecin erran nizaqueçu
Eguiara vaciniaqui vrricari nanguidiçu.

Penac handi vadituçu acheterric asquiduçu
Sarri sendoturen cira larruyori ossoduçu.

çauri banynz larruyan vada acheter herrian
Ene mina sendo ezliro çuc bayeci vician.

çure yrudi ederrac eta mayna gentilac
Gayzquiago çauri nici eci dardo çorroçac.

Vihocian çauri nuçu eta gathibatu nuçu
Amoretan harnaçaçu nic dudana çureduçu.

Amexetan aguerritan ni çugatic doloretan
Hizbat honic erradaçu hil eznadin othoy bertan.

Cer nahiduçu darradan gauça horren gaynian.
Mi nolacoric asqui duçu berceric ere herrian.

Verce oroz gaynetic hanbat mayte citut nic
Mundu oro vzi niro çure amorecatic.

Albanerra eguya nyc dut pena handia
Secretuqui minça guiten bioc othoy maytia.

¶ Amorosen disputa

Vztaçu hurrancera amore mayte
Oray particeco damu guinate.

Amoryac othoy partiguitecen
Gendiac diradela hassi beqhaicen
Laydoc hartu gabe gueldi guitecen
Gendec yrrigarri guerta ezquiten.

Elas amoria ene galduya
Iamas çurequila enaynde enoya
Biciric particia pena handia
Honeyn sarri vci nahi nuçuya.

Ni haurc ere guerthuz mayte bacitut
Onerizte gabez vzten eçitut
Vana ieyncoaren nuçu beldurtu
Sobera diguici eguyn beqhatu.

Orano amorea gazte guituçu
Ieyncuaz orhiceco leqhu diguçu
Are elgarrequi vehar diguçu
Oray particeco damu guituçu.

Beccatu honetan hilenbaguina
Damnatuluqueçu ene arima
Ecitela engoytic nitan engana
Nyri phoroguric eztidaçula.

Cineſtebat dicit gogoan honela
Nic nola daducat amore çugana
Ieyncoari ere eder çaycala
Hargatic gaycexi ezquiçaquela.

Horlaco lauſenguz vci naçaçu
Nola erhoturic narabilaçu
Othoy ceniçauçu nyry euztaçu
Ene gogoa vnſa eztacuſaçu.

Nola dioſtaçu horlaco hiça
Bethi daducaçu tema borthiça
Ioandaraudaçu lehen vihoça
Guero gathibatu neure gorpuça

Horlaceco erançutez vci naçaçu
Gueldi vacinite nahi nyqueçu
Gure echian ohart vadaquizquigu
Bioc iagoyticos galdu guituçu.

Gendiac ſo daudia bethi gugana
Ni haurc ſecretuqui nator çugana
çu haurc daquiqueçu noyzden ayzyna
Neque eçayçula gitia nigana.

Picher ebilia hauxi diohaçu
çuc ny laydo handiz vetheren nuçu
Othoy cenyçayçu nyri vztaçu
Niçaz axeguinic ecinduqueçu.

Amore maytia dioxut eguia
çutan diagoçu ene vicia
Nahiago dicit çure iqhuſtia
Eci neuretaco herri gucia.

Horlaco lauſenguz vci naçaçu
Ichil vacinite nahi niqueçu
Ieyncoaz orhiceco ordu luqueçu
Berceric har eçaçu niri vztaçu.

Ieynco veldurturic iarriciraya
Halaz deſpeditu nahi nuçuya
Hebetic ioan gabe ene buruya
Eguin vehar duçu ene nahia.

Oray nahi nuçu ya heben vorchatu
Aldi honetan othoy vci naçaçu
Berce aldibatez ginen nyçayçu
Nahi duçun ori ordu yan day diçu.

Haray cinacoric duçu errana
Vci daçan orrec escu yan du yena
Nahi du yenian eztuque yela
Hiçac hari bira dugun eguyna.

Oray eguyn duçu nahi duçuna
Emandarautaçu ahalgueyçuna
Maradi cacendut neure fortuna
Ceren gin vaynendin egun çugana.

Amore ecitela othoy despara
Honat veguitartez yçul çaquiçat
Ni vaytan duqueçu adisquidebat
Valia diquecit senhar gayxtobat.

¶ Ordu gayçarequi horrat zaquiçat

Oray vehar dnguya conquista verri
Eztey yraganez gomitu handy
Hanbat ecirade andere larri
Merexi duçuna narçaque sarri.

¶ Amore gogorraren despita.

Andre eder gentilbatez hautatuç ayt veguia
Herri orotan gauça oroz eztu vere paria
Othoy cebat banegu yon larradala eguia
Biderican liçatenez nynzan haren gracian

Respostu ya emanderaut luçamendu gaberic
Cortesiaz honderiçut nic çuri hayn segurqui
Berceric nitan eztuqueçu abisacencitut nic
Gazte çoroa nyçan arren enuqueçu hargatic.

çugaztia bacirere adi mendu hon duçu
Nic çugatic dudan pena othoy sendi eçaçu
çure taco harnazaçu vici nahi vanuçu
Ni çu gatic hil banadi cargu handi duqueçu.

Ohoria galcendela plazerguitia gayzduçu
Niri horla erraytia çuri eman eztuçu
Gayxteria eguitia laydodela daquiçu
Ny erhoa çu iaquynxu veha enaquidiçu.

çuhaur nahi bacirade ni segretu nuqueçu
Gure arteco amoria ehorc eciaquiqueçu
Secretuqui minçaceco othoy bide ydaçu
Enequila minçaciaz gayçiq ecin duqueçu.

Gayzqui eguindadinian gendec sarri daquite
Ene gayzqui eguitiaz enec laydo luqueyte
çu eta ni elgarrequi vnsa ecin guynate
çaude yxilic çoaz horrat eta hobe baitate.

Hiz horreçaz erdiratu deraudaçu vihoça
Nic çugatic dudan pena hanbat ere handida
çuçaz veraz ezpanadi oray vertan consola
Ene arima ialguirenda falta gabe canpora.

Arimaren ialguitia neque handia duçu
Oray duçun penegatic çuria egonenduçu
Horrelaco vanitatez nyri segur vztaçu
Prouechuric eztuqueçu eta cinhex nazaçu.

çurequila gayzqui vaniz nola vicininçande
Ene vihoz eta arima çurequila dirade
Vihoz eta arima gabe ehor ecin liçate
çu eta ni elgarrequi vnsa ahalguinate

Iauna guerthuz hic daducat porfidia handia
Ixil çendin nahi niquec ala ene fedia
Hiz gutitan adi ezac nahi vaduc eguia
Hiretaco eztiaducat guerthuz neure buruya.

Hori horla liçatela nicin neure veldurra
Andriac honderiçanari ezpadaqui mesura
Ni lehenic eta guero amoros oro galduda
Nic çuri hon vaderiçut gayzci eztaquiçula

Egundano yçan daya ni bay dichatacoric
Ny amoriac enu mayte nic hura ecin gaycexi
Vste dicit narrayola ecin duquedanari
Ceren vada hon derizat hon ezteriztanari.

Iangoycoa mutha ezac othoy ene vihoça
Amoriarēn harc veçala nic eztudan axola
Borchaz ere gavzqui bano hongui eguitia hobeda
Ni haurc ere vcirendut hon ezteriztadana.

Andre faltaz eniz hilen valinba ni lehena
Oroz exi vehardicit non vaytate hobena
Hequi ecin medra nayte bay gal neure arima
Bategatic ſarri niro diren oroz arnega.

Moſſen Bernat echaparere cantuya

Moſſen bernat iaquin vahu gauça nola ginenceu
Bearnora gabetaric egon ahal inçanden.

Heldu vehardu yen gauçan ezta eſcapaceric
Nic oguenic eznu yela hongui guitez verceric
Bide gabec haritunu vide eznu yen leqhutic
Erregueri gayzqui ſaldu guertu z oguengaberic.

Iaun erreguec meçu nenzan ioanenguion bertaric
Gaycez lagola ençun nu yen bana nicez oguenic
Izterbeguier ene yen malician leqhuric
Ioan nendin enaguien oguen gabe iheſic.

Valinetan ioan ezpaninz oguenduru ninçaten
Ene contra falſeria bethi cinhexi çaten
Iuſtician ençun vaninz ſarri ialgui ninçaten
Haren faltaz haſſi nuçu iauguitiaz dolucen.

Vercen gayçaz cençacia çuhurcia handida
Yzterbegui duyen oro nitan vedi gaztiga
Abantallan dabilela albayledi segura
Gayça apart egoyztea bethiere hobeda.

Ni gayxoa exayari ni haur giniz escura
Ene vnsa eguinac ere oray oro gayzdira
Haren menian ezpanengo nic nuqueyen çucena
Miraculu vanagui ere oray ene oguena.

Falsu testimoniotic ecin chor veguira
Halaz condemnatu çuten ieyncoa erehilcera
Beccatore guira eta mira eztaquigula
Balinetan vide gabe acusatu baguira
Paciença dugun eta ieyncoac guizan ayuta
Malician dabilena verac diro mendeca.

Iangoycua çucirade eguiazco iugia
Çure gortean vardindira handi eta chipia
Norc vaytere eguyn deraut malicia handia
Hayer hura othoy barqha niri valia eguia.

Iangoycoa çuc veguira exayaren menetic
Nic eniac badacusquit ene gayçaz vozturic
Çure escuyaz dacusquidan heyec gaztigaturic
Ene gaynian eztaguiten vsteduten yrriric.

Iangoycua eguin dicit çure contra beccatu
Hayez nahi enuçula othoy heben punitu

Erregueri daquidala nic eztícit faltatu
Ceren egon vehardudan heben hanbat gatibu.

çuganaco huxeguinez nahi banuçu punitu
Erregue eta verce oro ene contra armatu
Gogo honez nahi dicit çure eguina laudatu
Eta exayac didan pena pacientqui haritu
Nahiz heben pena nadin arimaden saluatu
Hayec cer merexiduten çuhau rorrec iqhustzu.

Penac oro gitendira ieyncoaren nahitic
Eta verac permiticen oro hobenagatic
Aguian hula ezpanango hil ninçanden engoytic
Ene exayac galdu vstian ene hona eguindic.

Berac baçu hil dirade ni are nago viciric
Hongui eguin vste vaytut ohorezqui ialguiric
Gayça nola hona ere iauguinenda vertaric
Gayz eqhussi eztuyenac hona cerden eztaqui.

Hongui eguitez gayz sofrituz vehardugu saluatu
Pena eta miseria nic enuyen dastatu
Oray daquit iangoycuac enu nahi damnatu
Heben ene penacera çaydanyan orhitu
Vrhe hunac vehardici suyan vnsa purgatu.

Vere nahi ezpanindu enindu quen punitu
Aytac vere haur maytia gaztigatu ohidu
Bihi hunac gorde gabe vehardici xahutu

Iangoycoac nizaz ere hala aguian eguindu.

Mossen bernat pensa ezac carcel hori gayzbada
Non baytere yfernuya are gayçago dela
Heben hic vaduquec vana hayecez norc consola
Penac heben findic sarri hayenac ez seculan.

Vatre minic heben eztuc lecot ialgui nahia
Handirenec bethidie suyan pena handia
Pena handi ycigarri eceyn pausu gabia
Harçaz orhit adi eta duquec paciencia.

Vercen gaztigari inçan oray adi gaztiga
Pena honez orhit eta hangoa ezac cogita
Hebengoaz vercecoa albaheça escusa
Vnsa enplegatu duquec heben eure denbora.

Hor balego gaztigayro ihaurc verce gucia
Bada oray gaztiguezac aldiz eure burya
Quirysaylu yari nola hiri hel eztaquia
Bercer argui eguin eta erracendic buruya.

Hiri eguin vadaraye bide gabe handia
Ieyncoari gomendezac eure gauça gucia
Harc orori emanendic bere merexituya
Gayzqui guiler pena handi pacienter gloria.

Eztaçala gayzeriztez damna heure buruya
desiratuz gayxtoari hel daquion gayzquia

Ieyncuari eguitenduc in iuria handia
Hura borrer eguitenduc iuge eure buruya.

Certan iuya hic vaytaçac eure yzterbeguia
Hartan condemnacenduquec yhaurc eure buruya
Eta hartan eztaquidic escusaric valia
Eracustac ehonere norden oguen gabia.

Iangoycua oray dicit eguiteco handia
Hiri honetan eryocez hilcenduçu gendia
Gathi butan hil enadin guiçon oguen gabia
Ossoric othoy ialguiteco çuc ydaçu vidia
Izterbeguiac eztaguidan guibeletic irria
Oguenduru çuyan eta hangaldudic vicia.

Libertatia nola vayta gaucetaco hobena
Gathi butan egoytia hala pena gaycena
Ny veçala eztadila othoy ehor engana
Ez etare hiz orotan fida ere guiçona
Iaygoycua çuc veguira niri ere çucena.

Amen.

## Contrapas

Heuſcara ialgui adi cãpora

Garacico herria
Benedica dadila
Heuſcarari emandio
Beharduyen thornuya.

Heuſcara
Ialgui adi plaçara

Berce gendec vſteçuten
Ecin ſcriba çayteyen
Oray dute phorogatu
Euganatu cirela.

Heuſcara
Ialgui adi mundura

Lengoagetan ohi inçan
Eſtimatze gutitan
Oray aldiz hic beharduc
Ohoria orotan.

Heuſcara
Habil mundu gucira

Berceac oroc içan dira
Bere goihen gradora
Oray hura iganenda
Berçe ororen gaynera.

Heuſcara

Baſcoac oroc preciatzẽ
Heuſcara ez iaquin harrẽ
Oroc iccaſſiren dute
Oray cerden heuſcara.

Heuſcara

Oray dano egon bahiz
Imprimitu bagueric
Hi engoitic ebiliren
Mundu gucietaric.

Heuſcara

Eceyn ere lengoageric
Ez franceſa ez berceric
Oray ezta erideyten
Heuſcararen pareric.

Heuſcara
Ialgui adi dançara.

¶Sautrela

Heuſcara da campora, eta goacen oro dançara

O heuſcara laude ezac garacico herria
Ceren hantic vqhen baytuc behardu yan thornuya
Lehenago hi baitinçan lengoagetan azquena
Oray aldiz içaneniz orotaco lehena.

Heuſcaldunac mundu orotan preciatu ciraden
Bana hayen lengoagiaz berce oro burlatzen
Ceren ece yn ſcripturan erideiten ezpaitzen
Oray dute iccaſſiren nola gauça honacen.

Heuſcaldun den guiçon oroc alcha beça buruya
Eci huyen lengoagia içanenda floria
Prince eta iaun handiec oroc haren galdia
Scribatus halbalute iqhaſteco deſira.

Deſir hura conplitu du garacico naturac
Eta haren adiſquide oray bordelen denac
Lehen imprimiçalia heuſcararen hurada
Baſco oro obligatu iagoiticoz hargana.

Etay lelori bailelo leloa çaray leloa
Heuſcara da campora eta goacen oro dançara.

DEBILE PRINCIPIVM MELIOR
FORTVNA SEQVATVR.

¶Extraict des regestes de Parlement.

SVpplie humblement Françoys Mor-
pain, maistre Imprimeur de ceste ville
de Bourdeaulx, que pour imprimer vn
petit tracte intitule, Linguæ vasconum
primitie, luy a conuenu faire plusieurs
fraiz & mises. A ceste cause plaise a la
Court inhibitions estre faictes a tous les Imprimeurs
libraires de ce Ressort de imprimer ou faire imprimer
ledict Tracte, & a tous marchãs de nen vendre dautre
impression dans troys ans a peine de mil liures tourñ.
& ferez iustice. Veue laquelle requeste la court faict les
inhibitions requises par ledict Morpain a peine de mil
liures tourñ. Faict a Bourdeaulx en Parlement le der-
nier iour Dapuril, mil cinq cens quarante cinq.

Collation est faicte.

De Pontac.